# ABENDUALDIKO I. DOMEKEA "C"

## Sarrera oharra

Ondo etorri, senideok, Abendualdiko I. domekako Liturgia ospatzera. Aldi barria hasten dogu. Horrek itxaropenera garoaz. Kontuz! Sufritzen dihardugun egoera honetan, behar-beharrezko somatzen dogun aldi-itxaropenean gelditu geintekez-eta. Jaso daigun gogoa benetako itxaropenera. Etorri jakun Jainkoagan aurkituko dogu hori. Eta itxaropen horretan bizi izateko "*erne*" eta "*argi*" egon behar dogu, argiak biztuta eta begiak zabalik. Hauxe eskatuko deutsagu Jainkoari.

## Sarrera abestia

Zatoz, Jauna! Gaur zai duzu mundua,
zori gaitzez hain da hondatua!
Zatoz, Jauna! Zabal, otoi, zerua:
**Etor bedi zure erreinua!**

Zatoz Jauna! Nausi bait da dirua:
jendea maiz dauka zapaldua.
Entzun, Jauna, behartsuen oihua:
**Etor bedi zure erreinua!**

---

**Damu-otoitza** (*Beherago, Abenduko Koroia*)

Gorago dagoana ikusteko burua jasoten ez badakigu, itxaropen kaxkarrean bizi izango gara. Jo daigun Jainkoaren errukira berak zabaldu deiguzan bihotz-begiak:

—Jesus Jauna, erne egotera deitzen gaituzuna, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, gugan zeure argitasuna bizten deuskuzuna, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, salbazino-itxaropena zaituguna, *erruki, Jauna*.

---

**Abenduko koroia** (egiten ez bada, gorago *damu-otoitza*)

Abendualdiko ezaugarri honen lehenengo argia biztuz, iragarri daigun erne bizi izango garala, itxaropeneko ibilbidean, uste on osoa Jainkoagan jarrita.

(*Kandelea bizten dan bitartean, abestu:*)

♩= 100 Abenduko koroioa bedeinkatzean: Is 60,1 Udaia'97

Ja - gi zai - tez, Je - ru - sa - lem, ba - da - tor zu - re ar - gi - a;
hor do- zu ar - gi-tzen, su ta gar, Jau- na-ren ain- tza.

En - tzun, e - ne he - rri, zu - re - tza - ko do-dan hi -
E - ten lo - ka - rri - ak, ba - rri txa-rrak al - bo - ra -
tza: as - ka - tu - ko zai - tut, poz - tu - ko deu - tsut bi - ho - tza.
tuz, po - bre - tu guz- ti - ei zu - re bi - ho - tza za - bal- duz.

Itxaropenaren Jainkoak bere Semearen mahai ingurura ekarri gaitu. Egun baten aintzazko mahai ederrean alkartu gaizala, zorionaren betetasunean.

AMEN.

**Lehenengo irakurgaiari**

Jeremias profeteak (Jesus jaio baino 600 urte inguru aurretik) berba gogorrez iragarri izan eutson Jerusaleme uriari bere hondamena, bere bidegabekerien ondorio. Baina oraingoan adore emon gura deutso, eta itxaropenera deitzen dau, Jainkoaren nahia salbamena eta zoriona diralako.

**Erantzun salmoa**

Salmo honen eskutik gure uste ona

Jainkoagan jarten ikasiko dogu haren egintza harrigarriak autortuz eta goralduz. Gogogtsu abestu daigun.

**R/. Jauna, Zugana jasoten dot gogoa.**




**Bigarren irakurgaiari**

Errez-errez esaten dabe batzuk ez dagoala zer eginik, gauzak "baltz" ikusten dabezanean. Beste batzuk, ostera, ez dabez ikusi ere gura euren ustelkerian jarraitzearren. Baina itxaropenez jokatu gura dauanak badauka non oinarritu; eta hartuko dau adore. Izan gaitezan azken honeetarikoak.

**Ebanjelioari**

Gerokoa itxaroteak ez gaitu eroan behar esku artean daukaguna gitxiestera. Ez da hau Jesusen jarrerea. Egin deiogun harrerea ebanjelioari Aleluia abestuz,

zutunik.

ABENDUALDIRAKO

Aleluia: Urratu eizue (G.J. 8/41)

R./ A- le- lu - - ia. A- le- lu- - - ia. A- le- lu- - ia.

V/. Ur- ra- tu ei- zu- e bi- de- a Jau- na-ren- tzat, zu- zen- du ha- ren bi- dex-

kak: e- ta i- ku- si- ko da- be guz- ti- ek Jaun- goi- ko- a- ren sal- ba- me- na.

## ESKARIAK

† Isilik badago ontasuna loak hartzen dau eta txarkeria nagusitzen jako. Itxartu egin behar dau ontasunak itxaropena azaleratu daiten eta txarkeria uxatua izan. Jo daigun otoitzera:

—Elizearen alde: itxaropenezko mezu lez iragarri daian Barri Ona, bere seme-alaba guztiak lo-zorrotik itxartu daizan eta etorri dan Jaunari harrerea egin deioen, *V/. Eskatzen deutsugu, Jauna.* R/. **Zatoz eta salbau gaizuz.**

—Erosotasunean bizi diranen alde: larritasunean eta txarto bizi diranen oihuak eta garrasiak entzun daiezan eta, harei laguntzeko, euren mozkorkeriak alde batera itzi daiezan, *V/. Eskatzen deutsugu, Jauna.*

—Onen geldokeriak oldarturik, han-hor-hemen erasoak eginez nagusitu gura dabenek Barri Onaren bihozbarritzerako deia entzun daien eta euren gogorkeria alde batera itzi, *V/. Eskatzen deutsugu, Jauna.*

—Etxeko, laneko edo inguruko arazoak dirala-ta etsipenean jausitakoen alde: jaso daien burua eta itxaropen izpiak sumatzeko gauza izanik, adore hartu daien, *V/. Eskatzen deutsugu, Jauna.*

—Abendua otoitzean hasten dogunok aintzat hartu daigun esku artean daukaguna, itxaropenean landu daigun eta barritasunaren testigu izan gaitezan, *V/. Eskatzen deutsugu, Jauna.*

† Itxartu gaizuz gure lo-zorrotik, Jauna, ontasunak bere burua erakutsiz, txarkeria uxatu daian, eta zure herriaren itxaropena biztu daiten. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

**Jaunartzerako**

**Zatoz, Jauna, zatoz lurrera**
zure herri hau salbatzera.

[1] *Bakea ta justizia bialdu mundura, Jauna;*
*zure jaiotzak gugana bekar poza, zoriona.*

[2] *Okerretatik zuzendu, gaitz bideetatik aldendu,*
*gure kateak apurtu (urratu), bide ilunak argitu.*

[3] *Gorroto-bideetatik aldendu gagizuz, Jauna;*
*alkar parkatu dagigun emoiguzu maitasuna.*

**Amaieran**

Abenduak ikuspegi barri batera deitu gaitu: gauzak danik txarren egon arren, uste osoa Jainkoagan jarriz, itxaropenez bizi izatera. Beragandik jatorku erne egoteko behar dogun argia.